# URTEAN ZEHARREKO XXI. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Daviden jauregiko giltzak*
*jarriko deutsodaz lepoan hari.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 22, 19-23

Hau dinotso Jaun ahalguztidunak Xebnari, errege-jauregiko arduradunari:
«Bota egingo zaitut kargutik eta zagozan lekutik kenduko.
Egun haretan neure zerbitzari Eliakimi,
Hilkiasen semeari, dei egingo deutsat;
zure soingainekoa jantziazo, zure garrikoa ezarri
eta zure aginpidea emongo deutsat.
Aita baten pareko izango da
Jerusalemgo bizilagunentzat eta Judako herriarentzat.

Daviden jauregiko giltzak jarriko deutsadaz lepoan;
harek edegia ez dau inork itxiko; harek itxia ez dau inork edegiko.
Untzea egur gogorrean baizen sendo ezarriko dot Eliakim,

eta bere senitartearen harrogarri izango da».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 138 [137], 1-2a. 2b-3. 6 eta 8bc (R/. 8bc)

R/. **Jauna, zure maitasuna betikoa da,**
**ez itzi bertan behera zeure eskuen lana!**

V/. Eskerrak emoten deutsudaz, Jauna, bihotz-bihotzez,
nire hitzak entzun dozuzalako;
kantuz goratzen zaitut aingeruen aurrean,
eta zure tenplu santurantz begira ahuspezten naz. R/.

V/. Eskerrak emoten deutsadaz zure izenari,
zure maitasun eta leialtasunagaitik,
parebakoak egin dozuz-eta
zeure izena eta promesa.
Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan,
kemena bizkortu bihotzean. R/.

V/. Gorena da, bai, Jauna,
baina umilari deutso begiratzen;
harroari, barriz, urrunetik igartzen.
Jauna, zure maitasuna betikoa,

ez itzi bertan behera zeure eskuen lana!
R/.

## II. Irakurgaia

*Harengandik dira gauza guztiak,*
*haren bidez eta harentzat.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 11, 33-36

Bai handia eta sakona Jainkoaren eskuzabaltasuna, jakituria eta ezaguera! Bai aztergatxak haren erabagiak eta bai barruntauezinak haren bideak! Nork ezagutu dau Jaunaren pentsamentua? Nor izan da haren aholkulari? Nork emon deutso hari lehenengo, gero harek bihurtu behar izateko? Harengandik dira gauza guztiak, haren bidez eta harentzat.
Aintza berari betieran! Amen.

Jaunak esana.

Aleluia

*Mt* 16, 18

R/. **Aleluia.**
V/. Zu Pedro zara, hatxa;
hatx horren gainean eraikiko dot Nik neure Eleizea,
eta Heriotzaren indarrak ez jakoz

nagusituko. R/.

## EBANJELIOA

*Zu Pedro zara, hatxa;*
*zeruetako erreinuko giltzak emongo deutsudaz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 16, 13-20

Aldi haretan, Jesusek, Filiporen Zesareara heldu zanean, itaun hau egin eutsen ikasleei: «Gizonaren Semea nor dala dino jenteak?»
Hareek erantzun: «Batzuek Joan Bateatzailea dala; beste batzuek Elias; besteek Jeremias edo profetaren bat».

Jesusek, orduan: «Eta zuek, nor nazala dinozue?» Simon Pedrok erantzun eban: «Zu Mesias zara, Jainko biziaren Semea».

Orduan, Jesusek esan eutson: «Zorionekoa zu, Simon, Jonasen semea, hori ez deutsulako hazur-maminezko inork agertu, zeruko nire Aitak baino. Eta hauxe dinotsut Nik: Zu Pedro zara –hatxa–; hatx horren gainean eregiko dot Nik neure Eleiza, eta Herioaren indarrak ez jakoz nagusituko. Zeruetako erreinuko giltzak emongo deutsudaz: zuk mundu honetan lotua,

zeruan be loturik geldituko da, eta zuk mundu honetan askatua, zeruan be askatua».

Orduan, bera Mesias zala inori ez esateko agindu eutsen Jesusek ikasleei.

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXI. DOMEKA
## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Guk be Jauna zerbiduko dogu,*
*ha dogu-eta geure Jainkoa.*

Josue liburutik

*Jos* 24, 1-2a. 15-17. 18b

Egun hareetan, Israelgo leinu guztiak batu ebazan Josuek Sikemen. Dei egin eutsen Israelgo arduradun, buruzagi, epaile eta funtzionarioei be, eta Jaunaren aurrera agertu ziran. Orduan, honan berba egin eutson Josuek herri osoari:

«Jauna zerbitzea txarto begitantzen bajatzue, aukeratu egizue gaur zein zerbidu: zuen asabek Eufrates ibaiaz bestaldean zerbidu ebezan jainkoak ala

amortarren jainkoak, orain bizi zarien herrialdeko jentearenak, hain zuzen be. Nik eta nire etxekoek Jauna zerbiduko dogu».

Herriak erantzun eban: «Urrun gugandik Jauna iztea, jainko arrotzak zerbitzeko! Jauna dogu geure Jainkoa; berak atara gaitu gu eta gure asabak Egiptotik, esklabotzatik; geure begiz ikusi doguz berak egindako mirari handiak; berak zaindu gaitu egin dogun bide guztian zehar, eta igaro doguzan herri guztietan babestu gaitu. Beraz, guk be Jauna zerbiduko dogu, bera dogu-eta geure Jainkoa».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 2-3. 16-17. 18-19. 20-21. 22-23 (R/. 9a)

R/. **Dastatu egizue eta ikusi zein ona dan Jauna.**

V/. Bedeinkatuko dot aldi oro Jauna,
nire ahoan beti haren gorespena.
Harro nago Jaunagaz,
entzun begie apalek eta poztu beitez. R/.

V/. Zintzoakana ditu Jaunak begiak,
adi hareen oihura belarriak.

Gaizkileen aurka Jaunaren aurpegia,
lurretik ezabatzeko hareen gogorapena.
R/.

V/. Deadar egiten dabe zintzoek, eta Jaunak entzun,
larrialdi guztietatik libratzen ditu.
Hurreratu jake Jauna bihotz-hausiei,
salbatzen ditu barru-jausiak. R/.

V/. Zoritxar asko izaten dau zintzoak,
baina guztietatik libratzen dau Jaunak.
Hazur guztiak zaintzen deutsoz,
bat bakarra be ez deutsoe hausiko. R/.

V/. Gaiztakeriak hiltzen dau gaiztoa;
zintzoari gorroto deutsoenek zigorra dabe izango.
Jaunak askatzen dau bere zerbitzarien bizia,
harengan babesten diranek ez dabe zigorrik izango. R/.

## II. Irakurgaia

*Handia da misterio hau,*
*eta nik Kristori eta Eleizeari loturik ikusten dot.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik

*Ef* 5, 21-32

Senideok: Izan zaiteze alkarren menpeko, Kristori deutsazuen begiruneagaitik. Emazteak izan

daitezala euren senarraren menpeko, Jaunaren menpeko lez, senarra emaztearen buru da-eta, Kristo Eleizearen buru dan lez, bere gorputza dauan Eleizearen salbatzaile dala. Eleizea Kristoren menpeko dan lez, izan beitez emazteak danetan senarraren menpeko.

Senarrok, maitatu egizue zeuen emaztea, Kristok Eleizea maitatu eta beraren alde bere burua emon eban lez. Bere burua eskeiniz, sagaratu egin eban Eleizea, Bateoko urez eta hitzaren indarrez garbituz. Holan prestatu eban beretzat Eleiza distiratsua, zikinik eta zimurrik edo holako ezer bakoa, santua eta kutsubakoa.

Era berean, senarrek be euren gorputza lez maitatu behar dabe euren emaztea. Emaztea maite dauanak bere burua maite dau-eta. Ez dau inork bere gorputza gorrotatzen, jaten emon eta zaindu baino, Kristok Eleizeagaz egiten dauan lez. Gu guztiok gorputz horren atal gara.

«Horregaitik, gizasemeak bere aita-amak itziko ditu,

eta bere emazteagaz alkartuko da,
eta biak bat izango dira».

Handia da misterio hau, eta nik Kristori eta Eleizeari loturik ikusten dot.

Jaunak esana.

Aleluia

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

R/. **Aleluia.**

V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira.
Zure hitzek betiko bizia dabe. R/.

## Ebanjelioa

*Norengana joango gara?*
*Zure hitzek betiko bizia dabe.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 6, 60-69

Aldi haretan, Jesusen ikasleetariko askok esan eban: «Gogorra da berbeta hau. Nork entzun leike?»
Jesusek, bere barruan konturaturik ikasleak marmarka ziharduela, esan eutsen: «Onartezina deritxazue horri? Eta Gizonaren Semea lehen egoan lekura igotzen ikusiko bazendue,

orduan zer? Espiritua da bizia emoten dauana; haragiak ez dau ezer emoten. Nik esan deutsuedazan berbak bizi eta espiritu dira. Baina badira zuen artean sinisten ez daben batzuk». Izan be, Jesusek hasieratik ekian nork ez eban sinisten eta nork salduko eban. Eta esan eban gainera: «Horregaitik esan deutsuet ezin dala inor be Nigana etorri, Aitak ez badeutso horretarako gaitasuna emoten».

Harrezkero, haren ikasleetariko askok atzera egin eban, eta aurrerantzean ez ziran haregaz ibili. Orduan, esan eutsen Jesusek Hamabiei: «Zuek be alde egin gura ete dozue?» Erantzun eutson Simon Pedrok: «Jauna, nogana joango gara gu? Zeuk daukazuz betiko bizitzako berbak. Eta guk sinistu dogu eta badakigu Zeu zarana Jainkoaren Santua».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXI. DOMEKA

## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Atzerriko nazino guztietatik ekarriko dabez zuen senide guztiak.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 66, 18-21

Hau dino Jaunak:
«Ezagutzen ditut Nik gaiztoen egintzak eta asmoak,
eta herri eta hizkuntza guztietako jentea batzera etorriko naz;
hareek etorri eta nire aintza ikusiko dabe.
Ezaugarri bat emongo deutset;
euren artean bizirik geldititutako batzuk
bialduko ditut nazinoetara;
Tarsis, Etiopia eta Lidiara,
Mexek, Tubal, Greziara eta urruneko herrietara,
inoiz nire barri izan ez daben
eta nire aintzarik ikusi ez dabenengana.

Eta nire aintza iragarriko dabe nazinoetan.
Atzerriko nazino guztietatik ekarriko dabez,
Jaunarentzat opari moduan, zuen senide guztiak;
zaldi, gurdi eta ohatiletan,
mando eta dromedarioetan ekarriko dabez

Jerusalemgo nire mendi santura –dino Jaunak–,
israeldarrek euren opariak Jaunaren etxera
ontzi garbietan ekartzen dabezan lez.
Eta hareen arteko batzuk be aukeratuko ditut
abade eta lebitar izateko –dino Jaunak–».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 117 [116], 1. 2 (R/. Mk 16, 15)

R/. **Zoaze mundu guztira eta iragarri Barri Ona.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue Jauna, nazino guztiok,
goratu egizue, herri guztiok. R/.

V/. Sendoa da-eta guretzat haren maitasuna,
beti-betikoa Jaunaren leialtasuna. R/.

## II. Irakurgaia

*Maite dauana dau Jaunak zuzentzen.*

Hebrearrei egindako epistolatik

*Heb* 12, 5-7. 11-13

Senideok: Ahaztu egin dozue seme-alabei lez emoten jatzuen aholkua:

«Ene seme, ez baztertu Jaunaren zuzenketa,
ezta galdu be adorea, hasarre egiten badeutsu,
maite dauana dau-eta Jaunak zuzentzen
eta seme-alabatzat hartzen dauana dau zigortzen».

Jasaten dozuena zuek zuzentzeko da; Jainkoak seme-alaba lez tratatzen zaitue. Izan be, zein seme nahiz alaba ez dau aitak zuzentzen?

Egia esan, edozein zuzenketa, momentuan, mingarri da, ez pozgarri; baina, gerora, haren bidez hezitakoei bere frutuak ekartzen deutsez: bakea eta zuzentasuna. Jaso egizuez, beraz, esku jausiak eta belaun ahulduak, eta ibili zaiteze bide zuzenean, herrenaren hankea hausi ez dadin, osatu baino.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 14, 6

R/. **Aleluia.**

V/. Neu naz bidea, egia eta bizia, dino Jaunak;
ezin da inor Aitagana joan,

nire bidez izan ezik. R/.

## EBANJELIOA

*Asko etorriko dira sortaldetik eta sartaldetik, eta Jainkoaren erreinuko mahaian jesarriko dira.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 13, 22-30

Aldi haretan, Jesusek, Jerusalemera bidean joiala, igarotzen zituan herri eta auzoetan irakasten eban.

Batek esan eutson: «Jauna, gitxi ete dira salbatzen diranak?» Jesusek erantzun eutsen: «Ahalegindu zaiteze ate estutik sartzen. Egia esan, askok sartu gura izango dau, baina ezingo da sartu.

Etxeko jaunak jagi eta atea itxi ezkero, kanpoan geldituok ate joka hasiko zarie: "Zabaldu, Jauna!" Baina harek erantzungo deutsue: "Ez dakit nongoak zarien".

Zuek, orduan, holan hasiko zaiakoze: "Zeugaz jan eta edan izan dogu, eta Zuk geure plazetan irakatsi izan dozu". Baina harek erantzungo deutsue: "Ez dakit nongoak zarien. Alde Nigandik, gaizkileok!"

Orduan, negarra eta hagin-

karraskada izango da, Abraham, Isaak eta Jakob eta profeta guztiak Jainkoaren erreinuan ikustean, zeuen burua, barriz, kanpora jaurtia. Asko etorriko dira sortaldetik eta sartaldetik, iparretik eta hegotik, eta Jainkoaren erreinuko mahaian jesarriko dira. Begira: orain azkeneko diran batzuk lehenengo izango dira, eta lehenengo diran batzuk azkeneko».

Jaunak esana.